

# Pterosauro

**Pterosauroa** edo **Pterosauria** Mesozoikoan (Jurasikoan eta Kretazikoan) bizi izan ziren narrasti hegalarien izen bereko ordenako kidea da. Dinosauroak eta krokodiloak bezala, pterosauroak narrasti nagusien (Archosaurioen) sailekoak dira. Lehenengo ornodun hegalariak izan ziren. Triasikoaren amaieran sortu ziren, eta Jurasikoan eta Kretazikoan zehar iraun zuten. Pterosauroek aurreko soinadarrak azal mintzezko hego bihurtuak zituzten, saguzarren erara. Baina pterosauroen hego mintza behatz bakar bati lotzen zitzaion, laugarrenari, eta atzerantz luzatzen zen gorputzaren saihetsetik femurreraino. Beste hiru hatzak finak zituzten eta gauzak harrapatzeko egokituak. Batzuek bigarren mintza bat ere izaten zuten, lepoa hegoarekin lotzen zuena. Atzeko hankak luzeak ziren, baina ahulak; indar gutxi zuten jauzi egiteko. Burezurra arina zuten, baina gogorra, eta mokoa estua eta luzea. Ikusmena zuten zentzurik garatuena. Aztarna gehienak itsasoan aurkitu dira. Bi dira pterosauroen azpisail nagusiak: Rhamphorhynchusak eta Pteranodonak. Lehenengo sailekoak dira antzinakoenak, izan ere, Jurasikoaren amaierarako desagertu ziren. Pterodaktiloideoek, ordea, Kretazikoan zehar iraun zuten. Guztiek egitura bera zuten, baina Pterodactylus-ak isatsa motzagoa zuten, lepoa luzeagoa eta burezurra luzeagoa. Mesozoikoaren amaieran desagertu ziren pterosauro guztiak eta hegaztiek hartu zuten haien lekua izadian.

**Pterosauro**

Irudi gehiago

**Sailkapen zientifikoa**

| | |
|---|---|
| **Erreinua** | Animalia |
| **Azpierreinua** | Bilateria |
| **Filuma** | Chordata |
| **Ordena** | **Pterosauria**<br>Kaup, 1834 |

**Azpibanaketa**

†**Eopterosauria**
†*Preondactylus*
†Eudimorphodontimorpha
†*Austriadactylus*
†Eudimorphodontia
†*Peteinosaurus*
†Eudimorphodontidae

†**Macronychoptera**
†Dimorphodontia
†Novialoidea

## Erreferentziak

- Artikulu honen edukiaren zati bat *Lur hiztegi entziklopediko*tik edo *Lur entziklopedia tematiko*tik txertatu zen 2013-11-5 egunean. Egile-eskubideen jabeak, Eusko Jaurlaritzak, hiztegi horiek CC-BY 3.0 lizentziarekin (https://creativecommons.org/licenses/by/3.0/es/deed.eu) argitaratu ditu, Open Data Euskadi webgunean (http://opendata.euskadi.eus/katalogoa/-/lur-entziklopedia-tematikoa/).

## Kanpo estekak

| | |
|---|---|
| **Autoritate kontrola** | **Wikimedia proiektuak** · Datuak: Q179204 · Multimedia: Pterosauria (https://commons.wikimedia.org/wiki/Category:Pterosauria) · Espezieak: Pterosauria<br>**Identifikadoreak** · BNF: 12259225w (https://catalogue.bnf.fr/ark:/12148/cb12259225w) (data) (http://data.bnf.fr/ark:/12148/cb12259225w) · GND: 4154768-8 (https://d-nb.info/gnd/4154768-8) · LCCN: sh85108569 (https://id.loc.gov/authorities/sh85108569) · NDL: 00574298 (https://id.ndl.go.jp/auth/ndlna/00574298) · AAT: 300310270 (https://www.getty.edu/vow/AATFullDisplay?find=&logic=AND&note=&subjectid=300310270) · **Hiztegiak eta entziklopediak** · Britannica: url (https://www.britannica.com/animal/pterosaur) · **Datu taxonomikoak** · BioLib: 18671 (https://www.biolib.cz/cz/taxon/id18671) · EOL: 4532232 (https://eol.org/pages/4532232) · Paleobiology Database: 156251 (http://fossilworks.org/bridge.pl?a=taxonInfo&taxon_no=156251) |

*Artikulu hau biologiari buruzko **zirriborroa** da. Wikipedia lagun dezakezu edukia osatuz (https://eu.wikipedia.org/w/index.php?title=Pterosauro&action=edit).*

